# aurkibidea

# maiatza

25 urte bete ditu dispertsioak. Eskubideen urraketak 1300 asteburuz. Data, zoritxarrez, borobila. Espaniako Gobernuak dispertsioa sistematikoki martxan jarri zuenetik, 25 urte bete dira. Urteurren hau, mina eta sufrimenduaren urteurrena da dispertsioak, 16 hildako eragin dituelako urte hauetan. Erabaki politiko baten ondorioz jarri zen martxan eta ordutik, sistema anker honek, 16 senide eta lagun hiltzeaz gain, ehunka zauritu eragin ditu ere. Etxetik urrun, ehundaka kilometrotara. Istripu hauek ez dira, inondik inora, kasualitatea; kausalitatea baizik.

475

Dispertsioa salatzeko elkarretaratzeak deitu zituen Etxerat-ek Euskal Herriko hiriburuetan. Euskal gizarteak argi utzi du, hamaika aldiz, dispertsioarekin amaitzeko ordua dela. Eskubideak errespetatzeko garaia dela. Hori dela eta, dispertsioaren arduradunei honekin amaitu dezaten exijitu genien; Dispertsioaren oraingo arduradunei, lehengo arduradunei, guztiei. Senide, eragile zein euskal gizartearen “Aski da!” ozena lau haizeetara zabaldu genuen elkarretaratzeetan baita sare sozialetan ere #preSOS25 traolaren bitartez. Milaka eta milaka txio Espainiako eta Frantziako estatuen krudelkeria salatzeko. Eta galdera bakarra: Noiz arte jarraituko dute giza eskubideen urraketa sistematiko honekin?

Dispertsioa ankerra eta krudela da baina, larriki eri dauden presoen egoerak ez du izenik. Horregatik, Etxeratek alarma gorria piztu behar izan du. Larriki gaixo dauden 12 euskal preso politikoek pairatzen ari diren egoera punta puntakoa delako. Egoera jasanezina. Eta etenik ez duen eskubide urraketa; eguneroko ogia. Urte bakar batean hiru izan dira espetxeratuta hil diren euskal preso politikoak. Egun 12 dira larriki gaixo daudenak. Minbizi latzak, HIESA eta buruko gaitz grabeen inguruan ari gara eta, horrelako gaixotasunek, espetxean okerrera besterik ez dute egiten. Honen aurrean, senide moduan, lagun moduan edota pertsona moduan ere, gure buruari galdegiten dioguna zera da; 12 preso politiko hauetatik zenbat hil behar espetxean estatuek giza eskubideak errespetatzeko? Zenbat preso aurkitu behar dituzte hilik Euskal Herritik ehundaka kilometrotara espetxe politika krudel hau bertan behera uzteko behingoz? Galdera latza baina, aspaldi buruan genuen galdera.

Minbizia, ictusa edo osasun arazo grabe bat sufritu duen edonork ondo daki hainbat tratamendu ezin direla edonola egin. Nola osatu zikinkeria besterik ez dagoen espetxe batean? Ez al da aski gogorra radioterapia eta kimioterapia saio bat hura eskuburdinekin pairatu behar izateko?Argigarria da ere ikustea nola espetxe politika gogortu eta krudeltu egin den ETAk bere ekintzak desagerrarazi ostean. Sufritzen ari garen biolentzia, sortzen duten min horrek ez du etenik izan baina, egun, handitu besterik ez dute egin.

Espetxe politika mendekuan oinarritzen ari dira; zentzurik ez daukan mendekuan eta hildako asko sorrarazi dituen mendekuan. Helburu politiko zehatz batzuen pean ari dira hau guztia egiten. Euskal gizarteak, sindikatuek, alderdi politiko zein eragileek ezin dute hau onartu. Aski da! Pairatzen dugun biolentzia eteteko garaia da. Dispertsioak eragiten duen minarekin amaitzeko ordua. Giza eskubide guztien, bakearen eta konponbidearen garaia.

Baina, Arkaitz Bellon aske beharko lukeen hilabete honetan, Ventura Tomeren senitarteko eta medikuari, gaiaz Nafarroako Parlamentuan jardutea debekatu diete. Debekatu, eskubide guztiak urratuak izan arren; presoa, pertsona gaixoa eta nafarra izan arren.

Baina maitzak ere elkartasun ekimen ugari utzi dizkigu. Irribarre bat marrazten duten horietakoak. Larrabetzun ospatu da aurtengo Lasterbidean Nazio Elkartasun Lasterketaren II. edizioa. Parte hartze datuak Oiartzunekoak bezain onak izan dira, 1000 bat korrikalarik parte hartu dutelarik. Datu oso antzerakoak Larrabetzu, biztanleria aldetik Oiartzun baino lau aldiz txikiagoa izan arren.

Lasterbidean ez da, dena den, kirola eta elkartasuna batu dituen ekimen bakarra izan. Pilotakadaz pilotakada ekimena ere aurrera doa. Parte hartze datu oso onak lortu ditu Euskal Herriko hiri zein herrietan eta hilabete honetarako zita ekainaren 29an izango da. Ekainaren 29an frontoiak betetzera goaz! Pìlotakadaz Pilotakada sakabanaketaren aurka.

Bitartean eta bukatzeko, guk senide eta lagunok, oso hitz ordu inportantea daukagu Ekainak 14an Baionan 23 eragilek deitutako manifa nazionalean. Gu ere bagoaz! Eta gizarte osoari gauza bera eskatzen diogu.

**ETXEAN NAHI DITUGU !**

# sakabanaketa

## 475 euskal preso politiko 79 espetxetan sakabanatuta

- **365** preso espainiar estatuko 44 espetxetan sakabanatuta
- **101** preso frantziar estatuako 28 espetxetan sakabanatuta
- **6** preso Euskal Herriko 4 espetxetan
- **1** Ingalaterrako espetxe batean
- **1** Portugalgo espetxe batean
- **1** Sei Kondarrietako (Ipar Irlanda) espetxe batean
- **8** preso espetxeratze arinduan, pairatzen dituzten gaixotasunak direla eta

- **64** euskal preso Euskal Herritik **1000 eta 1100** kilometrotara dauden espetxeetan
- **132** euskal preso Euskal Herritik **800 eta 990** kilometrotara dauden espetxeetan
- **159** euskal preso Euskal Herritik **500 eta 790** kilometrotara dauden espetxeetan
- **37** euskal preso Euskal Herritik **400 eta 490** kilometrotara dauden espetxeetan
- **72** euskal preso Euskal Herritik **400** kilometrotara baino gutxiago dauden espetxeetan
- **3** euskal preso Euskal Herritik urrun dauden 3 herrialdetako espetxeetan

# osasun eskubidea

## Etxeratek larriki eri diren presoen egoera salatu du prentsaurreko batean

Larriki gaixo dauden 12 euskal preso politikoen egoera oso grabea eta, egunero, okerrera egiten du. Horregatik, Etxeratetik, egoeraren berri eman nahi dugu; egoera zein den argi azaldu nahi diogu euskal gizarteari.

Alarma gorria pizteko ordua da. Larriki gaixo dauden 12 euskal preso politikoek pairatzen ari diren egoera punta puntakoa da. Egoera jasanezina da. Eta etenik ez duen eskubide urraketa; gure eguneroko ogia.

Urte bakar batean hiru izan dira espetxeratuta hil diren euskal preso politikoak. Egun 12 dira larriki gaixo daudenak; puntako egoeran. Minbizi latzak, HIESA eta buruko gaitze grabeen inguruan ari gara eta, horrelako gaixotasunek, espetxean okerrera besterik ez dute egiten. Honen aurrean, senide moduan, lagun moduan edota pertsona moduan ere, gure buruari galdegiten dioguna zera da; 12 preso politiko hauetatik zenbat hil behar espetxean estatuek giza eskubideak errespetatzeko? Zenbat preso aurkitu behar dituzte hilik Euskal Herritik ehundaka kilometrotara espetxe politika krudel hau bertan behera uzteko behingoz?

Espainia eta Frantziako gobernuek mina eta samina zabaltzen jarraitzen dute; mesede politiko eta elektoralak lortzeko, sufrimendua sortzen. Espetxean mantentzen dituzte 12 euskal preso politiko hauek, jakinda euren gaixotasunak espetxean okerrera egingo dutela. Ez hori bakarrik; gaixo egonda ere, neurririk krudelenak aplikatzen dizkiete. Ehundaka kilometroetara dispertsatu, bakartu, isolatu edota euren gaitzek okerrera ez egiteko behar dituzten tratamenduak ukatu edo zailtzen.

Erabaki politiko bat dago honen guztiaren atzean. Mina eta samina luzatzeko erabaki politikoa. Datuak begiratzea besterik ez dago honen berri izateko. 2008 eta 2011 urteen artean 12 izan ziren espetxeratze arindua lortu zuten euskal preso politikoak. Espetxeratze arindua gaixo zeudelako; larriki gaixo zeudelako eta euren gaixotasuna erarik eta duienean bizitzeko kalean egoteko eskubidea dutelako.

2011 - 2014 urteen artean erabaki politiko bat hartu dela nabaria da. Bake prozesua zein ETAren su etenaren erabakiaren ostean, egoerak okerrera egin du. Larriki gaixo dauden euskal preso politikoek ez dute, ordutik, espetxe arindua lortzeko inongo aukerarik. 14 izan dira 2011 urtetik tramitatu diren askatasunak

eta bakarra izan da onartua.

Onartu egin bazuten ere, gutxira, askatasun hori bertan behera utzi eta… presoa espetxeratu egin zuten berriz ere. Ez hori bakarrik, aurretik emanda zegoen Ibon Iparragirreren askatasuna bertan behera utzi eta Ibon espetxeratu egin dute; gaixo dagoen pertsona bat, espetxera eraman dute bere egoera hobetu ez den arren. 2011ko erabaki bat atzera bota zuten.

Argi dago presoak ez kaleratzeko erabakia erabat politikoa dela eta, euren eskubideak edo osasun egoera ez direla kontutan hartzen. 3 preso politiko hil dira urte bakar batean. Beste 12k pronostiko latzak dituztebaina euskal preso politikoentzako ez dago Vera, Rodriguez Galindo eta Barrionuevo bezalakoek izan dituzten askatasun humanitarioak.

Minbizia, ictusa edo osasun arazo grabe bat sufritu duen edonork ondo daki hainbat tratamendu ezin direla edonola egin. Nola osatu zikinkeria besterik ez dagoen espetxe batean? Ez al da aski gogorra radioterapia eta kimioterapia saio bat hura eskuburdinekin pairatu behar izateko?

Argigarria da ere ikustea nola espetxe politika gogortu eta krudeltu egin den ETAk bere ekintzak desagerrarazi ostean. Sufritzen ari garen biolentzia, sortzen duten min horrek ez du etenik izan baina, egun, handitu besterik ez dute egin. Espetxe politika mendekuan oinarritzen ari dira; zentzurik ez daukan mendekuan eta hildako asko sorrarazi dituen mendekuan. Helburu politiko zehatz batzuen pean ari dira hau guztia egiten. Euskal gizarteak, sindikatuek, alderdi politiko zein eragileek ezin dute hau onartu. Aski da!

Pairatzen dugun biolentzia eteteko garaia da. Dispertsioak eragiten duen minarekin amaitzeko ordua. Zertara ari dira itxaroten politika basati honi amaiera emateko? Etxeratetik ardurarako deia luzatu nahi dugu. Horregatik prentsaurreko hau. Euskal gizarteak hamaika aldiz eskatu du salbuespeneko politiken amaiera. Eta bukaera emateko unea da.

Hau guztia, Arkaitz Bellon kalera atera behar zen astean. Edota Ventura Tomeren familiari minbiziaz Nafarroako Parlamentuan hitz egiteko aukera debekatu diotenean.

Bukatzeko, euskal gizarteari,bakoitxa bere eremutik egoera horiek salatzeko eta mobilizazioetan parte hartzeko deia luzatu nahi diogu.

Aski da! Etxean eta bizirik nahi ditugu!

# salbuespen neurriak

## bizi osorako espetxe zigorra

Frantziar estatuan, bizi osorako espetxe zigorrari dagokionez, ez da urte kopuru maximorik. Biziarteko zigorrera ("perpétuité" deitzen duten neurria) kondenatua den preso batek baldintzapeko askatasuna eska dezake 15 urteren buruan (edo "segurtasun kondena" bete ondoan, kondenari neurri hau gehitzen bazaio), baina, erabakia Kondenen Aplikapenen Epailearen esku da, eta honek etengabe uka dezake. Preso sozial batzuek kasik 50 urte pasa dituzte Frantziako kartzeletan.

Euskal preso politikoen artean, 4 neurri honen pean aurkitzen dira gaur egun: 24garren urtea betetzen ari diren **Jakes Esnal, Frederik Haranburu** eta **Ion Kepa Parot**, eta 2013an kondenatu duten **Mikel Karrera**. Beste hainbat euskal presori bizi arteko zigorra eman diete "de facto" oso kondena luzeekin edota kondena ezberdinak akumulatuz.

Espainiar estatuari dagokionez, bizi osorako zigorra ahalbidetzen zuen 197/2006 doktrina indargabetu ostean, **gure senide eta lagun ugari** 40 urteko espetxe zigorra betetzera zigortu dituztela. Hau da, bizi osorako espetxe zigorrak aplikatzen dizkiete.

# espetxeetan

## eskubide urraketak

## bestelako gertakariak

### isolamendua

Bakartze edo isolamenduaren aplikazio zorrotza euskal preso politikoen bereizgarri bat da. Isolamendua edo bakartzea egoera oso zehatzetara zuzendutako neurria bada ere, espetxe arautegian (zigor puntual gisako neurritzat hartzen dena), gure senide eta lagunen kasuan ohiko edota behin-betiko neurri gisa aplikatzen da. Esan bezala, euskal presoen kasuan isolamendua edo mitarda maiz ezartzen den zigor bat da. Baina zenbait kasutan presoak agian isolamenduko moduluan egon ez arren bakarrik egoten dira, hau da, beste kiderik edo euskal preso politikorik gabe egoten dira, eta kasu hauetan bakartuak daudela esaten da. Hona hemen momentu honetan espetxeetan bakarturik dauden preso politikoen zerrenda:

| | | |
|---|---|---|
| **Euskal Herria** | Zaballa | Txus Martin |
| | Basauri | Aitzol Gogorza |
| | Iruñea | Fernando Sota Virto |
| **Espainiar estatua** | Almeria | Iratxe Yañez |
| | Castello I | Marta Igarriz |
| | Mansilla | Olga Comes |
| | Puerto III | Arantza Zulueta |
| | Segovia | Jon Enparantza |
| | Soto del Real | Iñaki Lerin |
| | Valladolid | Miren Zabaleta |
| **Frantziar estatua** | Tarascon | Alex Akarregi |
| | Mont-de-Marsan | Oier Ardanaz Armendariz |
| **Portugal** | Monsanto | Andoni Zengotitabengoa |
| **Sei Konderriak** | Belfast | Fermin Vila |
| **Ingalaterra** | Long Lartin | Raul Fuentes |

# espetxeetako egoerak okerrera

**Fleury-Mérogis :** Ekhine Eizagirre Zarauzko presoa 21 egunez bisitak kristalarekin eta interfonoarekin izatera zigortu dute. Zigor hau, aurreko hilabetean izandako bisita baten osteko biluztetan gertatu zen istiluaren ondorioz izan da. Bisitak izan ostean biluzarazi egiten dituzte presoak, gela txiki estu batean, funtzionario bat aurrean dutela. Egun horretan, funtzionarioak Eizagirreri biluzteko eskatu zion. Biluztu zen eta ondoren euskal preso politikoak beti ukatzen dituzten kontu batzuk egitera behartu nahi izan zuten, bizkarra erakutsi, belarriak begiratu eta abar. Umilaziorik onartu ez zuenez, funtzionarioak kargu handiagoko beste funtzionario batzuk deitu zituen. Gelan bakarrik zegoenez eta luze joko zuela ikusita, pasillora atera zen Eizagirre. Istilua pasillo erdian gertatu zen. Funtzionario ugari gerturatu ziren Eizagirrerengana, biluztu zedin. Honek ezetz erantzun baina, indarrez mugitu nahi zutela sumatzean eta, egoerak, okerrera egin aurretik, protesta moduan pasilloan biluztea erabaki zuen bere duintasuna aldarrikatzeko. Ekimen honen ondorioz, 21 egunerako zigortu dute

Bestalde, Fleuryko MAF -neskek kartzela- euskal preso politikoak borrokaldian hasi dira. Beraien egoera jasangaitza da. Hori dela eta, espetxeko funtzionario zenbaiten eta zuzendaritzaren jarrera ere aldatzeko eskatuz borrokaldia abiatu dute. Asteartean plantoa egin zuten patioan eta, horren ondorioz, mitarrean, zigor ziegetan, daude orain presoak. Presoek ez dakite zenbat denbora igaroko duten bertan baina egoera 12 bat egunez luzatu daitekeela aurreikusten dute. Gauzak horrela, beraien hurrengo urratsak zeintzuk izango diren erabakitzen joango dira. Azken aldian, eskubide murrizketa eta probokazio ezberdinak jasan dituzte kartzelan eta denbora luzean jasaten ari diren egoera hauei amaiera emateko ekin diote borrokari. Senideek, Zuzendaritzari gutun bidalketa masibo bat antolatu dute egoera salatzeko.

**Poitiers-Vivonne :** Poitierseko espetxeak bisita bikoitzak berreskuratu ditu bertan dauden euskal preso politikoen borrokaldiaren ondoren. Apirilaren hasieran asteburuetako bisita bikoitza -ordu eta erdikoa- 45 minututara murriztu zuen espetxeko zuzendaritzak. Ordutegi berriaren arabera, bisita bikoitzak asteazken eta ostegunetan egin ahal ziren. Egoera honen aurrean, plantea burutu zuten Maite Aranalde eta Izaskun Lesaka euskal preso politikoak. Aste honetan, espetxeak atzera egin eta gaurtik aurrera, larunbatetan egin ahal izango dituzte bisita bikoitzak.

## beste motako erasoak

**Maiatzaren 27an**, Auzitegi Nazionalak aske utzi zuen Harriet Agirre Egiako bizilaguna. Kalean hiru egun egin ostean, Espainiako Poliziak berriz atxilotu zuen 30ean, Agirrek auzi bat oraindik zabalik zuelakoan. Fiskaltzak ostera, gezurtatu egin zuen hori, eta biharamunean eman zuen aske uzteko agindua. Gauzak horrela, Harriet Agirre askatzeko eskatu zion Espainiako Auzitegi Nazionalak Espainiako Poliziari.

2005ean atxilotu zuten Agirre, Aurillac herrian, Frantzia erdialdean. Frantzian preso egon ondoren, 2013an jaso zuen Espainiaratzeko agindua.

# senide eta lagunak

## jazarpena

**Maiatzaren 23an,** Guardia Zibilak Puertoko espetxera joaten zen autobusean zeuden senideak kontrolatu egin zuen Lopidanako gasolindegian. Bidetik aterarzi ondoren, senideak autobusatik atera eta identifikatu egin ditu. Lehen aldirakotz bisitara joaten zen gazte bat aparte hartu zuten eta galdezketa egin zioten.

# askatasunak

**Olano Olano Juan Mari** (Zaldibi-Hernani), Maiatzaren 2an zigorra beteta
**Zerain Alvarado Jokin** (Gasteiz), Maiatzaren 5ean zigorra beteta
**Fernandez Bernales Josu** (Laudio), Maiatzaren 8an
**Gañan Ramiro Gaizka** (Santurtzi), Maiatzaren 13an
**Lasende Aldekoa Txomin** (Elorrio), Maiatzaren 17an zigorra beteta
**Uruburu Zabaleta Eider** (Bilbo), Maiatzaren 19an zigorra beteta
**Olaiz Rodriguez Jorge** (Iruñea), Maiatzaren 21ean zigorra beteta
**Zarrabeitia Salterain Eneko** (Abadino), Maiatzaren 21ean epaiketaren zain
**Agirre Garcia Harriet** (Donostia-Egia), Maiatzaren 27an epaiketaren zain
**Tobalina Rodriguez Juantxo** (Basauri), Maiatzaren 31an zigorra beteta

# espetxeratzeak

**Sota Virto Fernando** (Tutera), Maiatzaren 4ean, Iruñeako espetxean
**Mariezkurrena Urkizu Juan Mari** (Hernani), Maiatzaren 16an, Martuteneko espetxean
**Agirre Goñi Ekaitz** (Donostia), Maiatzaren 9an, Martuteneko espetxean

# leku aldatzeak

## destino aldaketa

ESPAINIAR ESTATUA
**Bravo Saez de Urabain Zigor** (Gasteiz), Dueñasetik Curtisera

FRANTZIAR ESTATUA
**Ardanaz Armendariz Oier** (Iruñea), Poitiers Vivonnetik Mont de Marsanera
**Zarrabeitia Salterain Eneko** (Abadiño), Poitiers Vivonnetik Mont de Marsanera eta handik Soto del Realera
**Ezeiza Aierra Axier** (Hernani), Fresnesetik Tarasconera
**Larretxea Mendiola Joanes** (Hernani), Fleury Merogisetik Soto del Realera

# hilabeteko gaia

## Dispertsioaren beste aurpegi bat : Jeromi Beaskoetxearekin elgarrizketa

**Maiatzeko hilabetekarian Jeromi Beaskoetxea elkarrizketatu dugu Lemoan. Iñaki Bilbao Beaskoetxea Lemoako euskal preso politikoaren ama da eta elkarrizketa honen bidez euskal preso askoren adineko gurasoek pairatzen duten egoera lazgarria salatu nahi dugu. Aita ezin izan dugu elkarrizketatu, osasun arazo baten ondorioz elkarrizketa egin zen egunean Bilboko ospitalean ingresaturik zegoelako.**

**Lehenik eta behin, zu nor zaren eta zenbat urte dituzun galdetu nahi dizut.**

Ni Jeroli Beaskoetxea naiz eta senarrak Pruden Bilbao du izena. Nik 82 urte ditut eta senarrak 86 urte ditu. Biok lemoarrak gara eta gure semeak datorren hilean 22 urte egingo ditu espetxean. Iparraldean atxilotu zuten eta Frantziako espetxeetan zortzi urte egin ondoren espainiaratu zuten. Geroztik Espainiako espetxe ezberdinetan 14 urte egin ditu, beti Euskal Herritik urruti.

**Frantzian espetxean egon zenean, zein tokitan egon zen?**

Egia esan, bazter guztietan egon zen. Adibidez, Saint-Mauren, Lyonen eta abarretan, baina beti urruti.

**Eta zuek nola moldatzen zineten bisita egitera joateko?**

Arratiko jendeak lagundu zigun eta eramaten gintuen, baina bidaia luze horiek egitea ez zen erraza guretzat. Gogorra zen, eta, gainera, guk ez genekien frantsesez eta askotan ez ginen ongi moldatzen. Garai hartan gazteagoak ginen, baina hala ere ez zen erraza guretzat.

**Eta Espainian zuen semea non egon da preso?**

Hasieran Valdemoron egon zen, baina gero Puerto Iera eman zuten etan han urte batzuk egin zituen. Gero Huelvara eraman zuten eta bi urte edo egin zituen. Billabonan eta Topasen ere egona da eta gaur egun Zueran dute preso.

**Eta espetxe horietara joateko nola moldatzen zineten?**

Hasieran Valdemorora joateko autobusa zegoen, baina gero desagertu zen eta autoz joan behar izaten zen. Eta Andaluziako espetxeetan egon zenean, astero senideak haraino eramaten dituen autobusean joaten ginen, baina asteburu osoa behar zen eta bidaiak luzeak eta gogorrak izaten ziren, batez ere nire adineko senideentzat. Adibidez, nik gerriko min handia izaten nuen eta bidaia ezin nuen etzanda

egin. Eserita egin behar izaten nuen. Eta bidaia luzea egiteaz gain, gero beste kezka batzuk azaltzen ziren, ea espetxera iritsi eta arazorik gabe sartzen utziko ote ziguten, ea oztopoak jartzeko aitzakia edo arau berriren bat asmatuko ote zuten, eta honelakoak. Baina, zorionez, espetxeraino joan eta gero ez gara inoiz sartu gabe kanpoan gelditu. Eta etxera itzuli ondoren, bidaiak eragindako nekea kentzeko eta atsedena hartzeko bizpahiru egun behar izaten nuen. Ez, ez zen kontu erraza izaten.

**Eta semea Puerton egon zenean, askotan joaten zineten ikustera?**
Semea ikustera ahalik eta gehien joaten saiatzen ginen. Aurrez aurrekoa zegoen bakoitzean gu joaten ginen, semea baita. Bidaiak luzeak eta gogorrak ziren, baina guk semea ikusi nahi genuen. Ez zegoen beste aukerarik eta edozer egiteko prest ginen.

**Eta gaur egun bidaiak egiteko zuek osasunez zer moduz zaudete?**
Senarrari ebakuntza egin behar izan zioten, bihotzeko arazoa zuelako, eta oraintxe bertan, urteen ondorioz, burua batzuetan ez dabilkio oso ongi. Eta senarraren osasun arazoak direla eta, arazoak izaten ditu bidaiak egiteko, baina hala ere beti joan nahi izaten du. Gaur egun, semea lehen bezain urruti ez badago ere, guretzat bidaia luzea eta gogorra izaten da. Lemoatik Zueraraino lau bat orduko bidaia egin behar da eta beti izaten dira arazoak, gerriko mina dela, atsedena hartzeko gelditu behar dela, komunera joan behar dela... Guretzat ez da erraza izaten, egia esan.

Bestalde, Zuerako espetxean senideak sartzen diren tokitik aurrez aurrekoak egiten diren tokiraino joateko tarte luzea ibili behar da, eta adinaren ondorioz, senarra eta biok jadanik ez gara gauza besteak bezala ibiltzeko, motelago ibiltzen garelako. Espetxean gurpil-aulkia izan behar dute ezinduentzat, baina bat besterik ez dute eta kanpotik ezin da guk ekarritako gurpil-aulkirik sartu. Espetxekoek eskainitakoa hartu behar da, baina bat besterik ez dago. Eta senarra eta biok joaten garenean, gutariko batek tarte luze hori oinez egin behar du, eta ez da erraza. Eta batzuetan ere gurpil-aulkirik gabe gelditu gara preso batek behar zuelako. Gainerako senideak gu baino bizkorrago ibiltzen dira eta bisita tokira lehenago iristen dira. Gu, aldiz, zertxobait beran-



duago iristen gara, baina gu iristerako bisitak jadanik hasiak daude eta berandu iritsitako denbora tarte hori gure bisitaren iraupenari kendu egiten diote.

**Eta bidaia luzeak egiten zenituztenean, semearentzat gogorra al zen gurasoak egoera horretan ikustea?**
Berak ez zuen ezer esaten, baina kezka nabaritzen zitzaion. Azken finean, espetxe batean edo bestean egon, urrutiago edo hurbilago egon, semea eta bere egoeran dauden guztiak ere preso daude, eta zigorra senideentzat izaten da, senideek bidaia luze eta gogorrak egin behar baitituzte etxekoa preso duten tokiraino joateko. Presoak gure bidez zigortzen dituzte eta presoek ederki dakite hori. Eta preso dagoenarentzat ez da samurra izaten, ez horixe. Ene ustez, egoera gogorragoa da presoen gurasoak adinekoak direnean, semea edo alaba ikustera joateko bidaia luzeak egin behar direlako, eta bidaiak egiteko baldintzak ez dira beti egokienak izaten, nekea dela, urduritasuna dela, kezka dela, errepidean beti egoten den arriskua dela, eta abar.

**Eta semea Andaluzia aldean preso egon zenean, zuek egoera hori nola bizi zenuten? Zer sentitzen zenuten?**
Tristura ikaragarria sentitzen genuen, baina inori ez genion inoiz hori erakusten. Ixilik egoten ginen eta aurrera egiten genuen. Gure kezkak eta gure mina barruak gordetzen genituen. Egoera horrelakoa zen eta aurrera egin beharra zegoen.

**Gaur egun, semea zenbatero ikusten duzue?**
Gutxi gora behera, hiru hilabetean behin edo. Azkenekoa aldiz semea martxoan ikusi genuen. Semea orain gertuago dago eta joatea erraza dela ematen du, baina guk lau ordu behar ditugu eta ez zaigu erraza, gure adina dela eta gure osasun arazoak direla. Adibidez, nik adinaren ondorioz ezin dut 40 minutuko bisitarik egin mintzatokian. Toki txikiak, estuak eta itxiak dira. Ni ezin naiz eserita eroso egon, eta horrexegatik nik bakarrik aurrez aurrekoa egiten dut, kristalik eta oztoporik gabe semearekin aurrez aurre egoteko. Semea Frantzian preso egon zenean mintzatokira bisita egitera joaten nintzen, baina gaur egun ezin dut hori egin, adina eta osasun arazoak direla eta. Bidaiak gogorrak dira guretzat eta 40 minutuko bisita egiteko bidaiarik ezin dugu egin. Gazteagoak ginenean holakoak egiten genituen, baina orain zahatuta gaude eta ezin dugu halakorik egin.

**Eta semearekin harremanetan egoteko bestelako moduren bat ba al duzue?**
Semeak astero telefonoz deitzen digu, baina deiak gutxi irauten du, bost minutuko deia baita, eta askotan ezin duzu esan nahi duzun guztia adierazi. Senarrak ez du ongi entzuten eta semearekin telefonoz hitz egiten duenean semeak esandakoa errepikatu egin behar dio aitari. Bost minutuak

azkar igarotzen dira eta ezin da ezer askorik esan. Beraz, aitak gutxitan hitz egiten du telefonoz semearekin. Nik hobeki entzuten dut eta semearekin telefonoz aritzen naiz.



**Lehenago zure semea Frantzian preso egon zela esan duzu. Frantzian preso egindako urteak Espainian zigorra betetzeko kontuan hartuko al dizkiote?**
Ez dakit. Horretaz gaur egun eztabaidatzen ari dela uste dut eta zerbait erabaki beharko dute. Beraz, zain egon beharra dago. Frantzian zortzi urte egin zituen, baina Espainian urte horiek ez badituzte kontuan hartzen semeak 38 urteko zigorra bete beharko luke, Frantzian egindako zortzi urte horiei Espainian ezarritako zigorra (30 urte) gehitu beharko litzaiekeelako. Ez dakit zer gertatuko den.

**Eta semeak zer esaten dizue ikustera joaten zaretenean?**
Semeak itxaropentsu egon behar dugula esaten digu. Beti itxaropen onak aipatzen dizkigu. Guk semea indartsu ikusten dugu eta ikusten gaituen bakoitzean asko pozten da. Guk herriko kontuak aipatzen dizkiogu. Senarrak ezin dio ezer askorik aipatu burua ez duelako behar bezala. Lemoa eta Arratiko jende asko bisitan joaten zaio eta horren bidez sorterriarekiko lotura bizirik du. Herritik kanpo urte asko egon arren, semeak herria eta Arratiarekiko lotura ez du galdu, esan bezala, jende asko bisitan joaten zaiolako.

**Eta beste kontu bat aipatuz, hauxe galdetu nahi nizuke. Zuek semea etxean inoiz ikusiko duzuela uste al duzu?**
Hauxe da gure kezka nagusia. Egunero zera galdetzen diogu gure buruari, "Semea etxean inoiz ikusiko ote dugu?". Senarrak bereziki horixe du kezka nagusia. Semea etxean noizbait ikusi nahi dugu eta, ene ustez, bizirik irauteko egunero itxaropen horri eutsi egiten diogu.

**Eta semeak ziurrenik gauza bera pentsatuko du, ezta?**
Berak ez du inoiz kezka hori erakusten, baina barruan gordetzen duela uste dut. Ene ustez, semeak ere hauxe pentsatzen du, "Ni espetxetik ateratzen naizenean gurasoak etxean egongo al dira?" edo "Eta ni espetxean nagoela gurasoei zerbait gertatuko balitzaie". Guk semea espetxetik kanpo ikusiko ote dugun pentsatzen dugun bezalaxe, semeak ere kezka hori izango duela

uste dut. Gure egoeran dauden adineko guraso guztiek kezka bera dutela uste dut, "Semea aske ikusiko ote dugu inoiz?"

**Eta egoera hau kontuan izanik, egunerokoa nola bizi duzue?**

Denetariko uneak izaten dira. Batzuetan ongi zaude eta beste batzuetan gaizki. Zenbaitetan itxaropentsu egoten gara eta beste batzuetan tristeago, baina aurrera egin beharra dugu. Ezin da besterik egin. Beraz, aurrera egin behar.

**Zuek pairatzen duzuen egoera hau konpontzeko zure ustez zer egin beharko litzateke?**

Politikariek egiten dutena baino gehiago egin beharko luketeela uste dut. Denok egoera honen konpontzea nahi dugu. Barruan daudenek nahi dute eta guk ere nahi dugu.

**Juan Maria Atutxa hemen bizi da, Lemoan. Zuen semearen egoeraz inoiz arduratu al da? Berari zuen semearen egoera axola zaiola uste al duzu?**

Ez dakit. Ez zaigu inoiz galdetzera etorri. Semea Frantziatik espainiaratu zutenean Lemoako alkateak Atutxaren partez telefonoz deitu zigun, semea nora eraman zuten galdetzeko. Eta semea Frantzian preso zegoela, Lemoako alkateak bisita egitera joango zitzaiola esan zuen, baina ez zen inoiz joan eta ez dira inoiz semearen egoeraz arduratu. Atutxa ez da inoiz gugana semearen egoeraz galdetzera etorri. Ondoan bizi da, gugandik gertu, baina ez zaigu inoiz etorri. Ez du inoiz gurekin hitz egin.

**Beraz, zuek eta Euskal Herriko hainbat gurasok bizi duzuen egoera ikusirik, honek sakabanaketa eta urruntzearen krudelkeria erakusten du, ezta?**

Hau oso txarto iruditzen zait niri, hau euskal presoen senideak eta lagunak zigortzeko egiten dutelako. Sakabanaketa mendekua da, besterik ez. Euskal presoek beraien etxetik hurbilen dagoen tokian egon behar dute, senideentzat askoz errazagoa izango litzatekeelako. Adibidez, nire semea Andaluzia aldean berriz egongo balitz, niretzat ezinezkoa litzateke haraino joatea. Gaur egun hurbilago dago eta hala ere bidaiak gogorrak suertatzen zaizkit.

**Eta bukatzeko, ezer esan nahi duzu?**

Bai, gure semea eta gainerako guztiak etxera lehenbailehen ekar ditzatela. Nik horixe nahi dut. Hainbeste urte eta gero nahikoa da. Egoera hau behin betiko konpondu behar da.

